2010eko azaroaren 25a, asteazkena || berria || 21
‹ Erdiz erdi
Nazio eraikuntza → Bai Euskal Herriari ekimena

# Izan eta egin



Euskal Herriaren nortasun ikurren erabilera sustatu du Bai Euskal Herriari ekimenak azken hamar urteetan. GARI GARAIALDE / ARGAZKI PRESS

## Bai Euskal Herriari ekimenak lan ildoak zehaztu ditu, nazio eraikuntzan ari diren eragileen arteko elkarlana sustatzeko

## Etorkinen integrazioan eta kirolaren alorrean jarriko du arreta berezia

**Jokin Sagarzazu**

«Euskal Herriaren nazio izatea ukatua den unean aurkitzen gara. Une honetan Euskal Herriaren nazio izatea aldarrikatu, irudikatu eta sustatzean datza gure funtzio nagusia. Horretarako, nazio gisa ikusi, pentsatu eta jardutea dagokigu». Nazio eraikuntzaren eztabaidan ekarpen berrituarekin dator bai Euskal Herriari ekimena. Hamar urte bete ditu, eta urte horietan eginiko lanari buruz eta aurrerantzean egin beharrekoari buruz hausnarketa prozesu bat egin dute ekimeneko kideek. Ateratako ondorioak eta zehaztutako lan ildoak txosten batean bildu dituzte, eta nazio eraikuntzan lan egiten duten eragileekin partekatzea da haien asmoa, naziotasuna modu eraginkor batean lantzeko helburuarekin.

Hausnarketa prozesu horretan, euskal naziotasuna ardazten duten elementuak zehaztu —historia, lurraldetasuna eta nazio identitatea zein nortasuna—, esparru horietan lan egiten duten eragileak identifikatu eta egungo egoeran zer bide landu behar den marraztu dute. Txostenean arreta berezia jarri dute migratzaileen integrazioaren alorrean eta euskal kirolarien aldarrikapenetan.

Eskubide zibil eta politikoen aldeko herri ekimen gisa sortu zen Bai Euskal Herriari 2000. urtean, eta urte horietan Euskal Herriaren eta euskal herritarren nazio eskubideen inguruan sakondu du bere lana. Gaur egun, ekimenaren lana naziotasun ikurren baitan kokatzen da, Geurea Ikurrina eta antzeko arlo eta egitasmoak sustatuz eta landuz. Egindakoaz hausnartu ondoren, aurrera begira jarri dira. «Izan garelako gara, baina izateko egin beharra dago», dio Mikel Luloaga ekimeneko kideak.

Auzolana da Bai Euskal Herriaren lan moldea, «ukazio, desitxuratze eta zapalkuntzen gainean» herriz herri ekimen txiki eta xumeak antolatuz. «Espainiako eta Frantziako banderen inposizioaren aurkako kanpainak antolatu ditugu, egutegi propio baten aldeko aldarrikapena zabaldu, Euskal Herriko herri, elkarte edo ikastolen arteko senidetzeak sustatu... Kontu txikiak dira, baina gaur egun estrukturalki jarriak dauden mugak gainditzea lortu dugu», dio Luloagak.

### Lan egiteko logika bat

Naziotasuna esparru bat izatetik haratago doan ildoa dela uste du Bai Euskal Herriari ekimenak. Luloagaren hitzetan, nazio eraikuntzan eraginkor aritu nahi bada, beharrezkoa da «ikuspegi oso bat» lantzea eta «lan egiteko logika» bat zehaztea. «Ikuspegi nazionalik gabe ez dago praktika nazional bat abiatzerik», nabarmendu du.

Luloagaren arabera, nazio eraikuntzan ari diren eragileen artean nolabaiteko atomizazio bat dago, «bakoitza bere kasa ariko balitz bezala, batzuek naziotasuna elementu historiko gisa landuz, beste batzuek elementu kultural gisa landuz, arlo politikoa landuz...». Bai Euskal Herriari ekimeneko kideen aburuz, indar sakabanaketa hori amaitu behar da, eragileen artean sinergiak sortuz. «Naziotasunaren inguruko ikuspegi osoa lantzea falta da. Elementu historiko, kultural eta politikoak batera landu behar dira».

Ideia hori irudikatzeko hainbat adibide jarri ditu mahai gainean Luloagak: «Esparru sozioekonomikoan, adibidez, ikuspegi nazionalik gabe landu daiteke Euskal Herriko sozioekonomia, baina helburua Euskal Herriko esparru sozioekonomikoa eraikitzea bada, hori nazio ikuspegirik gabe ezinezkoa da». Gauza bera dio euskararen alorrean, kirolean, folklorean... «Dantza talde askok esaten digute ez dutela politika kontuetan sartu nahi. Aldiz, dantzaren bidez zazpi herrialdeetako ikurrak erakusten dituzte gure herriaren nortasunaren erakusle. Horrek ez du esan nahi lan hori gutxiesten dugunik, balio handikoa da alor horretan, baina lanketa hori partziala da».

### Hustu eta berreraiki

Bai Euskal Herriari ekimeneko kideen irudiko, Espainiako eta Frantziako estatuek aspalditik jarri zuten abian euskal nortasuna biltzen dituzten indarrak zatitzeko estrategia. «Gure nazio identitatea desegitea lortu ez dutenez, zatiketa eta desitxuratze estrategiak abiatu dituzte», dio Luloagak. Asmo hori azken urteetan nabarmen indartu dutela uste du; eta, besteak beste, zatiketa administratiboaren bidez «errealitate berri» bat sortzera iritsi direla dio. «Nafarroa, adibidez, euskal nortasunaren aurkako errealitate gisa proiektatzen dute. Eta Frantziak Ipar Euskal Herria bertako identitate ikurrak tokiko folklore gisa erakusten ditu, balio politikoa kenduz».



> Ikuspegi nazionalik gabe ez dago praktika nazional bat abiatzerik»
>
> «Euskal ikurrei balio politikoa kendu nahi diete, eta beste balio batzuk sartu»
>
> **MIKEL LULOAGA**
> Bai Euskal Herriari ekimeneko kidea

Nortasun ikurren arloan lan egiten du batik bat Bai Euskal Herriari ekimenak, eta eremu horretan azken hamabost urteetan administrazioen aldetik atzerakada egon dela uste du Luloagak. Estatuak euskal ikurrak «desegiten» eta egungo administrazioen barrenean txertatzen saiatu direla dio. Hustu eta berreraiki: «Egungo administrazioetatik saiatu dira euskal ikur horien esanahia aldatzen. Ikurrina EAEko nortasun gisa hartu dute, eta Nafarroan debekatzen saiatzen dira. Ikurrei esanahi politikoa kendu nahi diete, eta beste balio batzuk sartu».

Jauzi hori ikurretan ez ezik beste hainbat alorretan islatu dela dio Luloagak. Hezkuntzan, adibidez, euskal curriculumarekin: «*Euskadi* eta *Euskal Herria* izenen artean egon da eztabaida. Izena eta izanaren arteko guda horretan sartu nahi gaituzte». Kirolean: «Gauza bera egin dute euskal selekzioen alorrean. Partidarik ez jokatzea oinarrizko futbolaren kalterako dela diote. Nongo oinarrizko futbola? EAEkoa, alegia. Kirolariak ohartu dira estrategia horretaz, eta selekzioa aldarrikatze hutsa egin ondoren, orain sistema nazional propioa aldarrikatzen dute. Muskulua sortzen ari da kirolaren alorrean ere». Eta egutegiarekin ere antzeko zerbait gertatu dela dio Luloagak. Urriaren 25a Gernikako Estatutuaren Eguna edo Euskal Autonomia Erkidegoaren Eguna izendatu izana jarri du adibide gisa: «Zatiketaren zatiketarekin jokatu nahi dute. Egutegia beti egin izan da beraiek ospatu nahi dutenaren arabera. Egutegi batek bere herriaren bizi erritmoa, lan erritmoa hartu beharko luke kontuan. Egutegi ezberdin bat edukitzearekin zer lortzen dute? Herri baten erritmoa apurtzea».

Era berean, EITBk nortasunaren afera nola lantzen duen salatu du, eta nazio perspektiba kendu nahi izatea leporatu die komunikabide publikoko arduradunei. «Azken zazpi hilabeteetan zazpi aldiz aldatu dute Euskal Herriko mapa. Gaur egun jada lortu dute EAE bakartuta irudikatzea. Era berean, N-1 errepidean istripu bat dagoenean, Madrilerako norantzan edo Frantziarako norantzan izan dela diote».

«Jendeari ikusarazi behar diogu zer gertatzen ari den». Hori guztia ikusirik «kritikotasuna landu» beharra dagoela nabarmendu du Luloagak.

### Ikur onak eta ikur txarrak

Autokritikarako lekua ere badu Bai Euskal Herriaren hausnarketak. Nortasun ikurrei dagokionez, adibidez, Luloagak uste du «eztabaida antzu» bat dagoela ikur onen eta ikur txarren artean. Ikurrina, Nafarroako bandera, Arrano Beltza... ikur horiek guztiak «tresnak» direla dio Luloagak, eta ikur horiei esanahia ematen diotena haiek erabiltzea dela dio. Erabileran dago gakoa: «Ez dago ikur on edo txarrik, zuzen edo okerrik. Zer irudikatzen duzun, zer esan nahi duen eta zer esatea nahi duzun da gakoa, eta hori landuz egiten da. Guk ez dugu eztabaida mistikorik sortu nahi. Agian etorriko da garai hori: estatua izaten dugunean. Bitartean, erabil ditzagun ikur guztiak».

Amazigh jatorria duen Jafid Ahamazianen arabera, Euskal Herriaren nortasuna ezkutatzen dute administrazioek, etorkinak integratzeko politiken bidez.

# Euskara, integraziorako gakoa

**J. Sagarzazu**

Jafid Ahamazian amazigha da, Maroko iparraldean jaio zen, eta Belgikan eta Espainian izan ondoren, duela 11 urte iritsi zen Euskal Herrira, «beharrak eta kuriositateak jota». Gatazka politikoari buruz zuen ezagutza dela eta Europan eginiko harremanak direla, Euskal Herrirekiko interesa piztu zitzaion. «Marokora propaganda politikoa baino ez da iristen. Euskal Herria, Katalunia edo Galizia ez dira existitzen: guztia da Espainia». Madrildik Bilbora eginiko bidaia batean, baina, ohartu zen Euskal Herriko errealitate soziala eta kulturala «ezberdina» zela.

Ahamazian Zuzenbideko lizentziaduna da, gizarte hezkuntzan egiten du lan eta Anitzak ekimeneko kide da. 2007an sortu zen Anitzak, Euskal Herritik kanpo etorritako pertsonez osatutako herri ekimen bat da, eta migratzaileen eskubideen eta Euskal Herriari nazio gisa dagozkion eskubideen aldarrikapenak bateragarri egin nahi ditu. «Iluntasunean oihu bat da Anitzak», dio Ahamazianek. «Gu ez gaude hemen lan egiteko soilik. Gure seme-alabentzako etorkizun bat eraikitzera etorri gara. Horregatik parte hartu nahi dugu Euskal Herriko arazoetan. Baina espainiarren eta euskal herritarren arteko arazo bat dela esaten digute; eta gu zer? Inork ez du guregana jotzen».

Ahamazianek argi du bera ere euskal herritarra dela. «Identitate asko daude. Identitatea ez da genetika, arraza edo txapela kontu bat», dio. «Identitatea prozesu baten moduan ikusi behar da. Ez dut uste identitatea homogeneoa denik, berezkoa edo oinordetu daitekeenik. Identitatea gune partekatu bat izan behar da, errespetuan eta elkar ezagutzan oinarritzen dena. Nire identitatea sortzeko prozesu etengabe batean nago».



> Herri honen identitate bakarra espainiarra dela esaten digute»
>
> **JAFID AHAMAZIAN**
> Anitzak ekimeneko kidea

Ahamazianek, beraz, argi zuen euskal gizartean integratu nahi bazuen euskara ikasi behar zuela. «Herri baten hizkuntza ezinbesteko faktorea da integraziorako», azaldu du. Oso kritikoa da, baina, alor horretan egiten diren politikekin. «Hona iristen zarenean eskaintzen dizuten lehenengo gauza da gaztelania ikastea; euskara zertarako behar dugun esaten dizute, gainera». Erabaki horri «kutsu politiko handia» nabari dio. «Benetakoa ez den errealitate bat inposatzen saiatzen dira. Herri honen identitate bakarra espainiarra dela esaten digute, gu txoroak izango bagina bezala».

Hori dela eta, Ahamazianek uste du administrazioen aldetik ez dagoela integraziorako politika argirik. Hala, nazio eraikuntzaren alorrean ari diren eragileek gai horri buruz hausnarketa sakona egin behar dutela dio. «Ikuspegiak globala izan behar du. Kontuan hartu behar gaituzte».

Euskal selekzioen ofizialtasuna aldarrikatzeaz gain, euskal kirolariak bilduko dituen egitura osatzea da Euskal Herriko Kirolariak ekimenaren helburua.

# Barneko mugei aurre egiten

**J.S.**

Kirol agintari politikoek ez dute barne mugarik gainditzeko inolako asmorik, horren ondorioz euskal kirolari asko arrotz sentiarazten gaituzte Euskal Herrian bertan». Aratz Gallastegi errugbi entrenatzailearen hitzak dira horiek. Gallastegi EHK Euskal Herriko Kirolariak ekimeneko kidea da. Iaz jarri zuen lehen harria EHK-k, Donostiako belodromoan eginiko ekitaldi erraldoi batean. Euskal kirolariak bilduko dituen egitura sortzeko aldarrikapenarekin bi mila kirolari eta kirolari ohik egin zuten bat. «Euskal kirolariak garela adierazteko sortu genuen ekimena. Kirolean ez dugu hori adierazteko aukerarik, batzen gaituen sentimendu horri erantzun nahi genion eta erantzun nahi diogu».

Gallastegik azaldu duenez, euskal selekzioen ofizialtasuna aldarrikatzeaz gain, Euskal Herri osoko kirolariak bilduko dituen egitura osatzea da ekimenaren helburua. «Euskal Herrian ez dugu herri batek izan behar duen kirol antolaketarik. Gure herrian euskal kirolaririk arrotz sentitu ez dadin, antolaketa egokia behar dugu».

Beste arlo askotan bezala, banaketa administratiboa dela-eta, ez dago ia Euskal Herria osoa aintzat hartzen duen kirol egiturarik. «Kirola ere zatitua dago Euskal Herrian», dio Gallastegik.



> Euskal kirolari asko arrotz sentiarazten gaituzte Euskal Herrian bertan»
>
> **ARATZ GALLASTEGI**
> Euskal Herriko Kirolariak ekimeneko kidea

«Guk egiten dugun proposamenaren bitartez, besteak beste, Euskal Herri barneko mugak gainditu nahi ditugu». Horretarako, kirol esparru desberdinetan aritzen diren pertsonak muga horiek gainditzera animatu ditu Gallastegik, eta lan hori herriz herri, ekimen txiki edo xumeen bitartez egin daitekeela uste du: «Euskal Herria aintzat hartuko duen edozelako kirol antolaketa, txapelketa, topaketa antolatzeko deia zabaldu nahi dugu Euskal Herriko kirolari eta kirolzaleen artean».

### Kirola eta politika

Gallastegik dio kirolak eta politikak harreman estua dutela. Haren arabera, euskal kirolarien aldarrikapenak badu politikatik asko, agintarien jarrerak duen moduan. «Euskal Herriko zatiketa administratiboa nabarmentzeko ahalegin handiak egiten dituzte. Badakite kirola tresna politiko izugarria dela eta gero, kirola ez dela politikarekin nahastu behar aldarrikatzera ausartzen dira». Agintari horien diskurtso bikoitza salatu du Gallastegik. «Kirolariak euskal selekzioetan jokatzera animatzen dituzte eta ofizialtasuna edo euskal selekzioen aldeko aldarrikapenak ere egiten dituzte, baina egunerokotasunean, Euskal Herriaren kirol zatiketaren ekintzaile aktiboak dira».